**URTARRILAREN 17an**
**San Anton, abata**



## Sarrera-abestia

**GOAZEN ALKARTURIK** biztuta fedea
argitan zabalik maitasun bidea.

1 *Entzun dezagun apaltasunez*
*entzun dezagun Jaunaren hitza*
*Bere hitzetan gure egia*
*gure indarra gure bizia.*

2 *Gurekin dogu maisu ta lagun*
*gurekin dogu, gurekin, Jauna!*
*Egin dezagun zuzentasunez*
*ta maitasunez bere esana!*

**ERANTZUN-SALMOA (**Sal 16 [15], 1-2a eta 5. 7-8. 11)




**R/. Zeu zara, Jauna, nire ondarea.**

Gorde nagizu, Jainko, Zugan naz-eta **ba**besten.
Hau dinotsat Jaunari: «Zu zaitut neu**re** Jauna».
Jauna, Zeu zaitut neure ondarea, neure e**don**tzia,
zeure esku dago nire **zo**ria. R/.

Bedeinkatzen dot Jauna, aholku deust-eta **<u>e</u>**moten,
gauez be berak dau nire barru**<u>a</u>** hezten.
Begi aurrean dot Jauna e**<u>ten</u>** barik;
ha eskuman dodala, ez naiteke dar**<u>da</u>**ratu. R/.
Bizirako bidea erakutsiko **<u>deus</u>**tazu;
alaitasunez beteko nozu zeure **<u>au</u>**rrean,
zorionez betiko zeure **<u>on</u>**doan. R

**ALELUIA**




**JAINKO HERRIAREN OTOITZA**

... **eskatzen deutsugu, Jauna**.

**ZEUGAN DOGU USTE ONA**

**Jaunartzean**

Hemen gaituzu, Jauna, ogiaren eske,
bizi behar honetan ahuldu bait gintezke.
Zure gorputz santua hartu nahi genduke:
zu barik bizitzerik ezingo genduke.

Munduak behar badau eguzki-argia,
mendiko abereak, iturri garbia;
besteok nahi badogu barruko bizia
beharrezkoa jaku zeruko ogia.

Jauna, zure grazia lagun dakigula,
ogi hau jan dagigun behar dan bezela;
Ez ahaztu txarrerako jarriak gaozela:
arren, zuzen ta leial bizi gaitezela.

**Amaieran**

**Kanta Jaunari** kantu barri,
kanta guztiok herriz-herri,
kanta Jaunaren izenari,
mundu guztia poz-kantari.

Gora Jainkoa zeruetan,
goratu danok eleizetan,
goratu baita aingeruek
eta goratu lurrekoek.